

EGILEA
**Oier Goitia Abadia**

Murcia II
Centro Penitenciario
30191 Campos del Rio

AZALA ETA ILUSTRAZIOAK
**Iker Moreno Ibañez**

HITZAURREA
**Ion T. Barrena**

**www.literaturakoadernoak.org**



ISBN: 978-84-942 777-6-4
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL: SS-1303-2018

*Per il piccolo e più bello paese di Lapurdi,*
*cioè, zure sorgin-kobazulotik, akelarre haitzulotik,*
*hogeigarren departamentala jarraituz*
*zazpi(ak) bat kilometrotara dagoen herrixkari*
*(43.306765, -1.498918)*

*Gure Sustrai enborrei*
*Gure Ekhi loreei*
*Gure Ani mendiei*
*Gure Xan pilotazaleei*

*A tutti quanti che purtropo ci hanno lasciato*

Zuzenbidezko estatu batean existitzen ez diren preso politikoei.
Estatu-Erreinu espainiarrak arrazoi politikoak direla-eta preso
ez dituen estaturik gabeko nazio errepublikazale eta soberanista
orori
Eufemismoei.

**Oier Goitia Abadia #2010020418**

## Egiaz I (Espaloia)

Gezurra
egia izan daiteke
baldin eta
Bulebarreko ezkerreko espaloitik
edo eskubikotik
zoazen
korrika

# HITZ-AURREA

Bulebarraren alde batetik korrika jardun ohi genuenok uste genuen beste aldean eta beste aldera egin ohi zutenen egiak ezagutu-aitortu-laztandu-damutu-jaso-hartu... ezkero bakoitzak bere egiarekin, bulebarraren alde batetik edo bestetik baina zumardi berean jarduteko modua egingo genuela.

Uste genuen, gainera, gezurrak herrena zuela berekin.

Ez genuen sinetsi nahi euren herrena gure hanka biko korrikaldia mututzeko gai zenik.

Ulertu dugu eurak eta gu ez direla lehengo eurak eta gu? Eta Bulebarrean beste aldera abiadan zirenen artean ere bazirela "gu" lakoak.

Egiaz Oier Goitiak idatzi dituen lau olerkik marraztu dute eguneroko honen zentzua, batzuk «condena» «injusto» hitzagatik aldatu eta santifikatu dutenean, berriz ere besteen egiak ezagutu-aitortu-laztandu-damutu-jaso-hartu beharraz hitz egitera eraman nahi gaituztenean. Egia errepide bazterretan ezkutatu asmo dutenen zoru etikoa abiapuntu.

Egiaren parte da Lizarra-Garazi garaian ihes egin eta orain Murtzian duten lagunaren eguneroko aldrebes hau. Preso egon den orok bere gutunetan topatuko dituen pasadizoekin, preso egon den ororen egia eta batzuk preso egon direla gogoratzen duen ororen egia.

Egietako baten egunerokoa da hau, hegitik egiarako bidean edo...

**Ion T. Barrena #2010026261**

* Jakitea komeni diren batzuk: Lehen aldian jartzen dizuten preso zenbakiak iraun egiten du, berriz zoazenerako... edo egon zarela, eduki zaituztela, ahaztu ez dezazun. Oierrekin ziega berean nintzela hasi nintzen gitarra ikasten, klink, klank, klonk... hortik oraingo mendekua bere testuen eta zuen artean zubilanak egiteko. Balu eta balitz; Galdakao, Gernika eta Arteaga izango lituzke "lokalizazio", eta Macerata (Italia), eta Espainia eta Frantzia ere bai, hizkuntzan irakurleak nabarituko duenez. Ezizen asko ageri da liburu honetan, ez da oso zaila asmatzen zein diren kideenak, zein modulokideenak eta zein kartzeleroenak. Urtetan baino gutun kopurutan neurtzen den bikote harremana; osaba, anaia, seme, kide... izateko manera... A! Eta errepikek ematen diote, neurri batean, lau pareta arteko eguneroko honi zentzua... espetxetik dator, gaur, 2019 ate joka dugula :(

# Bozgorailua

Eta banoa,
arrapaladan,
hala agindu didalako
bozgorailu
madarikatuak

“ghrzz... el interno dos mil diez millones veinte mil
cuatrocientos dieciocho acuda ... ghrzz!”

Konturatu gabe
maitaleak direla
bai Long Kesh-en egoana
bai belarritan dudana

eta banoa,
arrapaladan,
hala agindu didalako
bozgorailu
hiltzaileak

konturatu gabe
Auschwitzen
heldu orduko
entzuten zuten azken gauza zela

## Gutunak I (Bederatzigarrena)

Goizaldeko itsaso urdinean
kotoi gordinezko olatuak
tontor batekin daude
                    olgetan
tontor batekin daude
                    borrokan

Iluntzeko itsaso gorrian
suzko olatuak begietsiz
panoramikoa da
zinema pantailak eskainitako keinua,
ezkutuko ehiztariek
eguzkia jetzi orduko
gasnaren esnea
gatzatu
zaigularik



# Gutunak II (Hamahirugarrena)

Sekretuz betea,
hamahirugarrena,
erretzera bortxatu naute,
kea dariola
su hartu duelarik
bat batean,
oihu luze grisa

Sekretuz betea,
hamahirugarrena,
erretzera behartu naute,
kea dariola
zu hartu zaitudalarik
bat batean,
oihu luze gisa

Xurgada bat ez irentsiz ezkerreko gihar gorrirantz hartu du bidea keak biriketarantz zihoala...
galduz
hamalaugarrena noiz etorriko!!

# Valparaiso

Emakumea
teilatu batean,
begiak itxi ditu
koreografo lanbidea duten portuko garabien mugimendu
koordinatuekin

Emakumea
teilatu batean
erabat biluzik
itzalpe orlegi batek zentsuratu dio gorputz borobila

perfekzioaren zirkulua

Emakumea
Valparaison,
amesten jarraitzen du
eta beste aldean Lete ari zait kantuan

## Pepperoni

Aterpean esekita
edo
ganbaran zabalduta
sikatzen
Denak bilduak
kordelaz ilaran
josiak
eguzkitten
gorrie
gorri-gorrixe
arpeiko piperra
bata Ezpeletakoa
bestea txorizerue



# Martxotik maiatzera

"Itsas bazterrien urari begire topekogu
olatuek botilan dakarzkigun begi lizunak!!"...

"Itsas bazterrien urari begire topekogu,
olatuek botilan dakarzkigun...

**laztan** lizunak"

"Itsas bazterrien urari begire topekogu,
olatuek botilan dakarzkigun...

...eta eskuloturik probekogun...

**laztan** lizunak"



## Sotoko kerixek

Soto
almazena ere badela dio
sinonimoen kutxak,
hori dela eta
mondoinatuak
gaituzte berton,
elkarren gainka
latorrietako sardinak
antzeratzen

Biltegi
erraldoi honen dorre azpian,
gerizpean,
gertatutako bitxikeria oro
gure lengoaian
"sotokerixek" lez dira ezagunak.
Udaberriko gerezi loreak
eta haiekin amesteko dudan erraztasuna
horietakoak dira ere

Dorre azpian
behatz puntetan
jartzen naiz,
dastatzeko
irrikitan nagoelako
Sotoko kerixek,
noiz eroriko
noiz helduko
...............................................................zain

## Batera bustiko gara

Batera
lehertu dira
itsaso, eme ta arra

Batera
malekoiaren aurka
kolpeka aritu ondoren

Olatuak
amoranteak bailiran
bits bilakatuz desagertu dira

Maitaleak
irrintzi soinu batean
bildu ta kanta(u)ri doaz

Olatuak
kresalan disolbatuz
batera lehertu dira

Maitaleak
bai bustiko gara bai!
Olatuak begian itsaskiari so

batera

*Bebet@ri*

# Elkartasuna

Gu hemen
ta zu hor bazaude
zu hemen
ta gu hor gaude

Kaioletako sarrailetatik libratzen gaituen giltza
bakarra da,
bakarra
gainontzeko populu zapalduekin partekatzen duguna

Zu hemen
ta gu hor gaude
gu hemen
ta zu hor bazaude



## Gutunak III (Ehun eta hogeita bosgarrena)

Argitu nauzu
bidean
Irribarre orlegiz
han goian zaudenean
eta izpi horiek
piztu didate bidea
eta izpi horiekin
erakutsi didazu ibilbidea

Argitasuna dakarzulako
han goian zaudenean
izar orlegia

Zure argiaren itzalpean
nahi dut dantzatu
Zure argiaren itzalpean
nahi dut maitatu
Zure argiaren itzalpean
nahi dut lokartu

Irribarre orlegiz
han goian zaudenean
eta duzun distirarekin
nahi dut izan amorante,
eta duzun distirarekin
nahi dut izan aita

Argitasuna daramazulako
han goian zaudenean
izar orlegia

# Klinexa

Eguzkiaren bulkadaz haren kolorea duen gutun-azal gardenean
"muxu zapi" batean...
dakarzu esentzia

Goiko ohatzearen azpian lapa baten teknikaz...
itsatsita zaitut

Goizero siesta oro gauero presente
"klinex" sinple batek duen indarra,
inork ez ulertzeraino

*Karlottiri*

## Gara

Teo,
Floren,
Pilar
eta Gabinoren,
Marina,
Zesareo,
Elena
eta Juanjoren,

deiturak dauzkagulako
deiturak
harrotasunez
daramazkigulako
gara

## Kalera-kalera

Gaurtik aurrera
bi mila eta hamaikagarreneko azaroaren zortzia
egun markatua izango dut egutegian

Atzo telebistak 'esames' bat jaurti zidan eta
bihotza joan zitzaidan
taup-taupadan korrika,
korrika
Fresnesera,
gurasoen etxera,
Sustrairen eskolara,
Gernikara,
Galdakaora,
Larrabetzura...
... ni ziegan abandonatuz

Atzo telebistak 'esames' bat jaurti zidan eta
kalean ikusi nuen neure burua
istant labur batez,
hain labur,
eze konturatzerako
besoa atximurkatu behar izan bainuen,
bene-benetakoa zela ziurtatzeko

Atzo telebistak ‘esames’ bat jaurti zidan eta
hain arin joan zitzaidan bihotza
bidean galdu nuela,
jakin gabe
Fresnesen,
gurasoen etxean
Sustrairen eskolan,
Gernikan,
Galdakaon,
Larrabetzun...
... ote zegoen

Atzo telebistak ‘esames’ bat jaurti zidan eta
amildegi bateko hegian sortzen zaizun bertigo urduriak
bereganatu ninduen,
jaioberri bati
zilborreko kordela mozterakoan
sortzen zaion segurtasun ezaren tamainako

Atzo telebistak *Ciao, a la calle, muxu* jaurti zidan eta
Surtidos Cuetarak jaitsi nituen badaezpada
kideekin
kafetan bustitzeko
eta badaezpada horrek *Sister* deitzera eraman ninduen,
kontura araziz *Ciao*-ren ostean
*Ion T* falta zela mensaian

Gaurtik aurrera
bi mila eta hamaikagarreneko azaroaren zortzia
egun markatua izango dut egutegian,
Ion T askatu zutenekoa
eta gailetekin ospatu genuenekoa

Gaurtik aurrera
egun berezia izango da.
Kasik libre izan nintzen
eta bihotza
Urruñan
arnasestuka
aurkitu
nueneko eguna

# Jaitsi burua alkalinak datoz

Gurean ez dago
segapotorik
ezta telegramik
... ere
ez dago
twitterrik
ezta morse teknikarik
... ere

Gurean ez dago
belarriko konturik
ezta berba askerik
... ere

Ez dago

Gurean pilak daude
usoen faltan
mensaiak itsatsirik

eta patioan dute
lurreratze pista
hegaz datozenean
eta patioan dute
beraien errekonbertsioa
krisi garai hauetan

Amets,
kontu,
droga,
agur,
maitasun hitz,
bilera egun,
mehatxu,
txutxumutxu,
irain,
hitz,
konplot...

Garraiolariak!!

# Emozioen segada

Orainaren zurrunbiloan
murgilduta,
sorpresen arteagan
itota,
armiarma-saretan
bildua.
Harrapatua
emozioen segada batean

*Aita-amabitxi gabe geratu garenoi*

# Klik

Tristuraren alde itsuenak
oinetatik bekainak arte bustitzen zaituenean

Tristuraren alde itsuenak
arropa intimoenak alargunen kolorez tindatzean

Tristuraren alde itsuenak
duzun ostadarra monokromoz *photoshopeatzean*

Pentsatu
*klik* batekin nahikoa dela

Pentsatu
interruptore soil batekin polikromoak berreskuratzea
badugula

Pentsatu
hutsuneak ere hustu daitezkeela
..........................................................................................................
................................................*klik!*

## Tripako... zaratak

Bakardadea
hutsik dagoen edalontzi batetik edatea bezalakoa da

Bakardadea
barrutik hustu zaituztenean dator

Bakardadeaz idazteko
bere konpainian asko egondakoa behar duzu

Bakardadean
edalontzi horretatik edandakoa izan naiz

Betea zegoelakoan
erabat ase arte

## Bederatzietako kolakaoa

Nola,
nola mahaigaineratu dezaket
ilargirik gabeko egunetan
berau jezterik ez dagoenean
arrimatzen garela

Nola
nola zukutu dezaket
musturra txokolatez marraztua dudanean
muxu eman diogula elkarri,
piperrik egin ez badut

Nola

# Tripako... minak

Bakardadea
hutsik dagoen edalontzi batetik
bakardadean
edatearekin alderatu daiteke

Bakardadea
barrutik hustu zaituztelako dator;
bakardadean,
sentimendu soil bat
eta gainontzekoak
estaltzen direlako



Bakardadeaz idazteko
haren konpainian egondakoa behar duzu
bakardadean
edalontzitik edan
betea zegoelakoan
asez

Bakardadeari
izkin egitea
zaila da

Bakardadean
tripak egarriz zarataka
deitzen zaituenean

Bakardadeak
erabat bereganatzen zaituenean
soilik
amets eginda
ase daiteke

## Sustraietatik galdera I

Gaur egin didazu
aspaldi prestatua nuen galdera.
Gaur galdetu didazunean
estutu egin naiz, ordea,
prestatutakoa ahaztuz.
Gaur galdetu didazu
behinola neure buruari galdetu niona,
gaur galdetu didazunean:
«*Zejgaittik* zaude *kajtzelan*, osaba?»
Eh... eh, eta ni... eh...
«Euskalduna naizelako» erantzun dizut
ezpata eta dragoien munduetatik ihesi

## Cacao marabillao

Txokolate ontza baten
magnesioari esker atera naiz...
negarzuloen kiribiletik
eta
txokolate ontza baten
magnesioari esker atera naiz
kirolarekin biribilketan

## Sustraietatik galdera II

«...eta *ojduan*
ni ere *sajtuko* naute?»
eh... eh, eta ni...
                        ... EZ!
«baina euskalduna naiz...»
Bai, baina sustraiak,
sustraiak, ezin dira kartzelaratu

# Zigorrari zigorra

Kataklunk!

Ordu biak laurden gutxiagotan
hozkailuko atea ireki,
haren argi tristeak
harrera ongi etorria dantzatu

... eta zast!

Barrura jaurtiki naute
usteldutako okela bainintzan
hamabi egunez
arratsaldero

Zortziak bost gutxiagotan
hozkailuko atea ireki
haren argi tristeak
agurra dantzatu

... eta zast!

Ostikoka kanporatu naute
kontserbatutako okela bainintzan
hamabi egunez
arratsaldero
filma bera,
'Marmokaren eguna'
eta ni
Bill Murray

kataklunk!

## Añuarekin hitzordua

Muntrak
egunero abisatzen dit
*pipika*
egunero
baina ez beti
bazatozela

Muntrak
egunero badu ordu bat
*pipika*
okina napolitanarekin
abisatzeko
badatorrela



## Sustraietatik galdera III

Gaur galdetu didazu
eta erantzutera nihoanean
telefonoak ez dit utzi
pipi... pipi... pipi... pipiiiiii...

## Nik ere nahi dut

Nik ere nahi dut
ohe
handi, handi, handi, handi bat
lokartzeko
ertz batekin ere nahikoa dut
ohe
txiki, txiki, txiki, txiki batean
elkar egoteko

# Macerata-ko leihoa

Ikatza beharrean
koloreetako leihoak
parez pare zabalik utzi dizkidazu
eta kolore bizien korrontea nabari dut
leihoetatik sartzen
sartzen
batean izozturik ageri bagara ere
memento hori noiz etorriko zain bizitzen
bizitzen

## Ziega bateko atean I

Ziega bateko tatuaiak
sartu ninduten egunean
xuxurlatu zidan
*Donde acaba toda lógica*
*empieza Instituciones Penitenciarias*

Hau izan da eman didaten
gomendiorik onena,
ziegako atearen kontra
desesperazioz burua gal ez nezan

## Kakaztu

Atzo lagunek
harrituta begiratu ninduten
“enmierdar” aditza asmatu nuelako
Gaur lagun berberek:
«Nondik atera duzu atzoko aditza?»
*Je ne sais pas!*
erantzun diet

## Dutxita

Lehen
garagardozkoak zirenekin
gaur
pitxar bete urarekin
dutxita ontzian
zutunik
*bañitoa* ontzian
ezin etzanda

## Ziega bateko atean II

Burdinazko atea
irekitzen den bakoitzean
isilik geratzen da,
ezkutuan
zoroetxe honen aurrean ni
abandonatuz,
baina burua gal ez dezadan
gomendioa gogoraraziz,
tatuaia!

## Mutu utzi nauzu

Hitzak
ostikoka datozkit
arrapaladan, urduri,
beraien zentzua azaltzeko premian.
Mutu utzi nauzu, ordea,
ezin hitzik ahoskatu
dena
dena esanda duzulako
hitzik egin gabe

## Pez, verde, aleman

Ekialdea
eskubiko begipean itsatsiz,
mendebaldea
ezker eskuarekin eutsiz

ostertzera begiratu
ezker begia itxiz
ostertzera tiratu
mendebaldeko eguzki izpiak

Itsasoan duzu
aurkituko
olatuek dizutena
xuxurlatzeko

## Tontorrei begiratu

Handik goitik
ikusiko nuelakoan
nituen begi aurrean
eta bat bera ere ez zen
bestea baino handiagoa
eta batek berak ere ez zuen
besteak baino dir-dir urduriagoa
eta bat bera ere ez zen
bestea baino perfektuagoa

Handik goitik
ikusiko nuelakoan
nituen begi aurrean
eta hara urrunean
mugarri distiratsua
eta hara urrunean
Camp Nou berdetsua
eta hara urrunean
udare umoa

Tontor haien bien artetik
beherantz erortzerakoan
aurkitu nuen umelekua
eta han lo egitera
bota nuen burua
han lo egitera
han lo
lo
tontorrei begira



# Orezta

Munduko bi tontor ederrenen artean
ilargi betea dagoela diozu

munduko bi tontor ederrenen bidean
ilargi beltz bat dagoela diozu

munduko bi tontor ederrenen
titiburuetara heldu nahi dut
bertatik zu ikusteko

## Begirada bizia

Gogoratzen begiez?
Jarraitzen dabe begire
zu
zuri
zutaz
zurekin
zuregana

## Topatu ginenekoa I

Langileen eguna,
hileko lehena,
eta greba egun bateko
gudari egunaren bezpera
distantziaz laburtu zaizkigu
irailaren hogeita lau batean

# Desertuan

Orain urte batzuk
autobus urdinean neramaten
orain, ordea,
oliba-berde iluneko autobusean naramate
...................................................... trialara...

Orain urte batzuk
saredun leihotxotik ibilgailuen plakak
aurrean zuri, atzean hori ziren
orain, ordea,
zuriak dira, bai aurretik, bai atzetik
...................................................... trialara...

Orain urte batzuk
inguruan metropolia nuen,
eguraldi grisak babestua
orain, ordea,
lastozko-hori koloredun zapi laua dago edonon
gainean olibondoz tindatutako pilotak (!!) itzal eginez
...................................................... trialara...

Orain urte batzuk
autobus urdinean neramaten
orain, ordea,
oliba-berde iluneko autobusean garamatzate
hiru euskaldun matrimonioaren aitzakian
ametsa kontsumatzera
...................................................... trialara...

...................................................... lepoan hartu ta segi aurrera!

## Agurrik gabeko heriotzak

Agur limoizko gazietan
tristeziak txuriz tindatzen gaituenean
guri dagokigu koloreak esportatzea
Agurra laranja, eztitsua
eta koloretsua bihurtzeraino

## Topatu ginenekoa II

Urtu dira batean
segundoak
datak
egunak
bi urteak

Urtu dira batean
alkarren aurrean
datek kontsumitutako segundoez
ordulariek presa zuten
egun batean

# Palestinaz

Zu eta nire artean
dagoen bide tartean
inork irakurriko balu...
Justizia pixka bat,
ondar ale txiki bat,
egingo litzaieke...
Epaitegi batek,
edozer esanda ere,
justizia egingo liekela
uste duzu ala?

## Fruta-zalea ni I

Udare bat
esku batean
haginkada batekin
dudalarik ahoan
ireki zait
pentsamendu lizunen kutxa
Horrela
besterik gabe
udare bat
dudalarik eskuartean
bihurgunez betea
pentsatuz zarela

# Egiaz II (Inauteria)

Gezurra,
egiaz
mozorrotu daiteke
Tolosako inauterietan



## Iko bota pilota

Esku pilota
murruaren kontra kolpatuz
mindua dabil joan etorrian
baina halako batean
ihes egin dit
murrua saltatuz
bestaldean da orain
esku minez
negar batean

## Fruta-zalea ni II

Madaria dastatu nuen
egun bateko bazkalostean
madaria dastatuko nuke
beste egun bateko eguerdian
madaria noiz dastatuko dut berriz?
*Auskalodadean*

# Nahiko nuke I

Zure umetokian sartuko nintzateke
zoro-zoro
umetokian nahiko nuke izan
gozo-gozo

Umetokian berriz
ahapaldiz ahapaldi
bederatzi hilabetez nintzelako
aspaldi-aspaldi

Zure umetokian barneratuko nintzateke
astiro-astiro
umetokian nahiko nintzateke
han askatzeko

## 300

Hirurehun egunero
ni, ni, nini
hirurehun egunero
Bittor, Bittor, Bittorkeri
Hirurehun egunero
ki, ki, kidetasun
hirurehun egunero
kontu sexu kontari
hirurehun egunero
txinatarren zentimetro
hirurehun egunero
*estuak* jartzen naute potxolo
hirurehun egunero
berba-ariketa entretenigarri

# Fruta-zalea ni III

Madari bat dastatu nuen
atzo gauean
eta zutaz gogoratu nintzanean
madaria janda nuen

*Jasanezina jasan dutenei*

## Haur nintzela alua!

Haur nintzela
etorri zinen
atea ireki eta itxi ostean
Haur nintzela
etorri zinen
ene barru-barrutik ezin atera
Haur nintzela
joan nintzen
ume izatetik heldutasunera salto batean
Haur nintzela
joan nintzen
zuk jolasa deitzen zenionari nik ihes egin nahiean
Haur nintzela
joan zinen
ezabatua, kanporatua, begiak irekitzerakoan itxi ostean
Haur nintzela
joan nintzen
negar batean oihu-mutu ezinean atea ireki eta itxi ostean
haur nintzela

# Japoniarrak urriko azken astelehenean

Begiluzedun ekialdeko emakume zein gizon haiek
bi makil zituztela eskuetan
bi makulu atzamarretan
eta musturra katiluan murgildu
eta mutur luzez xurgatuz
bi makuluen laguntzaz jakiak bultzatuz
bi makilekin akuilua jakietan sartuz
begiluzedun ekialdeko gizon zein emakume haiek
dioskue
sortutako zarata desatseginaz
atsegin dituztela oso gure
indaba, odoloste, txorizo
eta sasi urdaiazpikoak

zarataren edukazio diplomatikoaz
dioskue

# Ogitartekoa

Banaketa hitza
entzun nahi ez duzunean
atzamarrekin
hodeiez beteko dituzu belarriak
haiek estaliz
gorra nahi duzulako izan
eskuekin mozorrotuz
aitatxoren oihuak
amatxoren negarrak
isiltasunezko *hodeitartekoa*
meriendatuko duzu
banaketa hitza
entzuten duzun bakoitzean

## Vaskobank

¡Vasco! ¿Me sacas un café?...
¡Vasco! ¿Me sacas un café?...
¡Vasco! ¿Me sacas un café?...
¡Vasco! Mi madre-padre-hermano-hermana-tia-tio... están en el hospital
¿Me prestas para una llamada?
¡Vasco! ¡Vasco! ¡Vasco!
¿Me puedes sacar un paquete de tabaco?
Te lo doy, ¡nunca jamás!
¡Vasco! ¿Me puedes regalar una coca cola y un tigretón?
¡Vasco! Me voy a comprar una casa con garaje...
¿Me puedes conceder una hipoteca?

# Tok tok tok I

tok, tok, tok...
tok, tok, tok...
txoria moko-joka
edo norbait ate-joka?
Tok, tok, tok...
tok, tok, tok...
entzuten?

## Zain gure zaindariak

Gutunen zain
idatziak daudenean,
erantzunen zain
galderak eginak,
bisiten zain
etxekoak bidean,
sententzien zain
aspaldi epaituak,
egunkarien zain
atzokoak direnean,
ateratzeko zain
orduak esanak,
sartzeko zain
euria patioan

## Tok tok tok II

Ate-joka!
Postaria...?
Biblia saltzailea...?
Jehova testigua...?
Arratsaldetako *tupper* animadora...?
Frak kobratzailea...?
Iturgina...?
Gas butaneroa...?
Suhiltzailea...?
Zerbait eske auzokidea...?
Polizia...?
(...ezinezkoa, hauek ez dute abisatzen...)

Atearen bestaldean joka nor ote dagoen ezin jakin nabil
begizuloa
kanpoan dagoelako
barruan beharrean

Etxetik botako nauen bankuko idazkari judiziala ez bada
giltzazaina da orduan
ate-joka... jarraitzen du

# Bi hitz

Baditut bi hitz
elkarri
elkarrekin
**M**ultzok**A**tuz gero
**I**nkapaza naizenak esa**TE**ko
ezgauza naizena aho**Z** es**A**teko
elkarri
elkarrekin
bi h**IT**z
badit**UT**
eta horrela dizkizut
ezkutatuko
bata bestearen atzetik

# Carreroren edalontziak

Edalontzia buruz gora geratzea da
helburua
horregatik dago patioa plastikozko kafe-edalontzi txikiz
betea

... iup! La ra...

horregatik, oinez goazelarik aterkiaren beharra dugu
plastiko kazkabarraz babesteko

Edalontzia buruz behera geratzea da
helburua
Sinismen bat dagoelako hemen
gorantz botaz
sinismen bat dagoelako hemen
buruz behera eroriz gero
sinismen bat dagoelako hemen
askatasuna bila datorkizula

... iup! La ra...

edalontzia buruz gora geratzen bada
zu baino lehenago

## Oporretan

Zer erraza den
bidaiatzea
kotxerik gabe
hegazkinik gabe
dirurik gabe

zer erraza den
bidaiatzea
gogoekin
arkatzekin
gutunekin

zenbat buelta munduari!
zenbat buruari!
Zenbat...

# Isiltasunean (15-M-15ekoei I)

Notarik gabe
pentagrama sare batean bilduak
gaudenean
gara
isolamenduan

## Ablazioa

Doana
aldi berean triste, pozik eta alai
izatea posible da
benetan posible da
pozik, alai eta triste aldi berean izatea
ez doana

# Agur besarkada

Besoetako oilo-ipurdia
kirikiño besarkada batean
bihurtzen da
bat han
bestea hemen
agurtzerakoan

## Navalcatraz fashion week

Gizon ttipia,
japoniar kamiseta termikoaz
teknologian erabat jantzia
nahiago zuen
karakolak beharrean
eguberritan omeleta afaltzea...
(...tipularekin noski)

Gizon ttipia,
txandal beltz termikoaz,
ziraun tolosar estiloaz
(...frantsez teknikaz jantzia, noski)

zebilen zapata marroiekin
zebilen galtzerdi zuriekin
modeloen pareko pasarelatik
(...atzera eta aurrera, noski)

# Askatasunean (15-M-15ekoei II)

Pentagrama batean
alai, kontent, zoriontsu, libre...
daude notak saltoan

## Hitz potoloen zipriztinak

Belarri bakoitzean hatz bakarra
sartua dut

eta diotsut,
"zer diozu?"

belarri bakoitzean hatz bakarra
sartua ez dudalako
kantari nauzu

eta diotsut
"zer diozu?"

Belarri bakoitzean hatz bakarra
sartua dut
badakit zer esango didazun

hala ere diotsut,
"zer diozu?"

Belarri bakoitzean hatz bakarra
sartua dut
txiki nauzu horrela

Aho betez diostazun hitz potoloak
begi dardartietan sortutako kataratak,
eragindako soinuak entzun ez ditzazun



horregatik diotsut,
“zer diozu?”

Euria ari du-eta... ez dut nahi
zaparradaren zipriztinik jaso
ez dut nahi umezurtz izan,
badakit zer esango didazun-eta.... ez dut nahi
negarrez blai
agurtu..........................ez dut nahi

## Bizitzak (preso zaitu)

Bizitzari
presondegi erraldoi baten traza hartzen badiozu

Bizitzak
bizitakoak lapurtu dizkizulako da.
Beste bat besterik ez zara,
zu ere preso zaituzte

Bizitza oso bat
presondegi erraldoi batean igaro dutenak,
presondegi erraldoi batean dirautenak,
kalean direlako dira preso

Bizitzak
kaletik atera zituelako batzuk
bizitza emandakoak zirelarik
kaletik atera zituelako besteak,
bizitza emandakoak zirelarik,
gainontzekoak memoriaren bila desagertu ginenean

Bizitzari
presondegi baten traza hartzen badiozu...

Etxean, kalean ala ziegan zaude?

# Olentzerori karta

Pasa dan urtien eskatutakoa
aurtengoan be eskatzera
noakizu

Mila eta zortziehun minutu
mila eta zortzigarrenez
mila eta zortzi aldiz

Pasa dan urtien eskatutakoa
aurtengoan be eskatzera
noakizu

Ehun mila eta zortzi segundo
ehun mila eta zortzigarrenez
ehun mila eta zortzi aldiz

Pasa dan urtien eskatutakoa
aurtengoan be eskatzera
noakizu

Hogeita hamar ordu
hogeita hamargarrenez
hogeita hamar aldiz

Elkarrekin egoteko denporie
hillien behin intimatuz
Elkarrekin izateko denporie
gure DNAk, den denak
elkar nahastatzeko
batean biltzeko
izakia izateko
elkar bizia emonez
garena amesten uzteko

aurtengoan be eskatzera
noakizulako
amets alai bat



## Zirku-Arrak

Zirkularrak dira
ezinezko angeludun ferekak
Zirkularrak
bide aldapatsuetan sortutako ezpain talkak
Zirkularrak
simetrikoak, moldagarriak,
puntan urre bana dituzten tartak
Zirkularrak
asimetrikoak, eliptikoak, estaltzeko darabilzkizun gortina
sentsualak
Zirkularrak dira
borobil-borobilak
nire desioak

## Ur Gal-gal(due)etara bultzatuz

Aurretik atzerantz dabilela
datorkigu
Atzera begiratuz aurrerantz
doala
Otarrain madarikatua!
Atzetik aurrerantz dabilela
goazkio
aurrez begiratuz atzerantz
dabilela
Otarrain madarikatua!

## Ate-tximuaz I (08:00etan)

Klink, klink, klank, klank
klink, klink, klank, klank
*R E C U E N T O !*
klink, klink, klank, klank
klink, klink, klank, klank

*Otsokori*

## Stop Hipoteka

Amnesiatua...

Ebakuntza gelatik etxeko kanapera erori zara
prakak belaunera arte galtzontziloekin zangotrabatuta
Narda kiratsa gorputzean itsatsita
ispiluaren bestaldean burezurra zara
besteen begietan soilik hezurdura
Eskuartetik irristatu zaizu
kloroformo botila erdi-huts batek
milaka zatitan puskatuta
belaun artean delarik eskopeta kea dariola

Anestesiatua...

Begiak ireki orduko konturatu zara banketxeko kanapean
eserita zaudela
prakak belaunera arte galtzontziloekin zangotrabatuta
narda kiratsa inguruan itsatsita
bulegoaren bestaldean zuri ari zaizkizu burezurrak begira
Eskuartetik irristatu zaizu
piztutako azken zigarreta batek
begiak gorri sutan puskatuta
belaun artetik atera duzu eskopeta kea dariola

Amnistiatua...

## Ate-tximuaz II (14:00etan)

Klink, klink, klank, klank
klink, klink, klank, klank
*R E C U E N T O !*
Klink, klink, klank, klank
klink, klink, klank, klank

# El hombre de Bohemia

Como la vida misma
de cristal
es el amor

Frágil, eterno,
temporal, flexible
pero hermoso al mismo tiempo

Como el amor mismo
de cristal
es la vida

y cuando se nos escapa
de entre los dedos
en mil pedazos
hecho añicos
aterriza ante nuestros pies

y mientras tanto
nosotros descalzos
con cristales bajo los pies
avanzamos
como hacen los fakires

frágil, eterno,
temporal, flexible
pero hermoso al mismo tiempo

como la vida misma

*Athleticzaleari*

# Harri-orri-ar

Egokitu gaituzten ziega honetako leihotik
eguzkiak ekialdetik egiten du gorantz
egokitu gaituzten ziega honetako ohe-bistetatik
eguzkiak mendebaldetik egiten du beherantz

ezin duzu egoera hau menperatu
eguzkia ekialdetik ateratzen bada
eguzkia mendebaldetik ezkutatzera behartuz

ezin dut kausazko hezetasuna oinperatu
matalaza inguratuz jarri ditudan kartoiekin ez bada
matalaza inguratuz dagoen humusarekin batera oheratuz

harri, orri, ar

Goiko ohatzean naiz (humusexuala) harri dudalako
aukeratu
zuk beheko ohe litera irabazi didazulako orri aukeratuz
(motel! Daramazun aitona-pijama horrekin, kaka zaharra!)

harri-orri-ar

## Ate-tximuaz III (21:30ean)

Klink, klink, klank, klank
klink, klink, klank, klank
*R E C U E N T O !*
Klink, klink, klank, klank
klink, klink, klank, klank

## Gutun-apaintzailea

Gutun orriei ertzak mozten dizkiet
gutun-azalek pisua nabari ez dezaten
gutun orriei idatzirik gabeko hutsuneak laburtzen dizkiet
gutun-azalak arinagoak izan daitezen

Gutun-apaintzaile ofizioa daukat
Navalcarneroko posta zaindariak
diru-isunak jartzen dizkigulako
behin eta berriz
behin eta berriz
Gutunek duten larregizko pisuagatik
gutun-azalak kexu omen direlako
edo posta zerbitzukoek maite ez gaituztelako
behin eta berriz
behin eta berriz

## Ate-tximuaz dagoenari I (08:00etan)

Pum, pum, pum, pum
pum, pum, pum, pum
*¡¡NO ME VOY A INCORPORAR!!*

*(bye bye ziegakidea)*

*Avec la participation indispensable*
*– irresponsable de Goio Jimenez*

## N’importe quoi

Écoute, écoute, écoute-moi :
Ici, le matin je ne me réveille
communiste - borgne
Le lendemain
socialiste - boiteux
Demain
peut être anarchiste- consumériste
Hier matin
nihiliste - humoriste
Aujourd’hui
je ne suis rien
Dans un mois
parachutiste - pute
Le mois dernier
social – autiste
Après demain
capitaliste – sandiniste
Il y a treize ans
j’aurais été avocate – transformiste, très opportuniste
L’année prochaine
djihadiste – nudiste
Un jour dans une autre vie au réveil matinal
je fus aubergine – myope

ci, tous les matins je me réveille
et je prends le petit déjeuner
à côte de mes camarades
à la cantine
sans distinguer le paradis
de la paralysie

Ici, je suis dans un hôpital psychiatrique
plein de psychiatres
au chômage
et le soir je m'endors en vrac
et quelquefois quelqu'un me braque
les rêves

Ici le matin à la cantine
je blague et je pisse accroupi
avec constipation
mais sans pilules psychotropes, même pas super
dépressives
seulement je rigole de ma psychopathie ;
philosophie – transfuge.

Écoute, écoute, écoute-toi :
Car ici le matin j'ai les oreilles fermées
les yeux croisés
(dans le café)
et le pied de boue submergé
(dans la cuvette)
comme d'habitude

## Txinatarrez

Txinatarra
lego jokoarekin parekatu digu
eleaniztun errusiar batek

Txinatarrez
ez dago ez orainik ez iraganik
ezta etorkizunaz deklinatu beharrik ere

Txinatarra
zeinu hizkuntza moduan uler genezake
eta zeinuak pilatuz esan beharrekoa sortu

Txinatarrez
ikasteak, beraz, joko bat dirudi
makil asko marraztu behar den jokoa

# Ate-tximuaz dagoenari II (21:35ean)

*Ixo, ixo, ixo, ixo*
*ixo, ixo, ixo, ixo*
A U T O B U S E R O   A M A R G A U !
*kar, kar, kar, kar*
*ixo, ixo, ixo, ixo*

## Urtarrilero Bilbon

Baziren parasolak,
besteentzako euritakoak
ziren aterkiak,
batzuentzako guardasolak
dozenaka, hamarna milaka
den-denak zabal-zabalik
koloreetako ehunka borobil
den-denak zabal-zabalik
euriari izkin eginez
euriari irrist
den-denak zabal-zabalik
sakabanaketan laprast



## Dortoken kontuetatik

Orriak alferrik baliatu edo gaizki
erabiltzen direla olerkiekin?
Eta zuriz dagoen gainontzekoa
baldin bada irakurri beharrekoa?

Ezin deszifratuzkoa batzuetan
(hieroglifikoa)
eta hartzen duten forma kuriosoa baldin bada mensaia?

Deszifragarria bestetan
(pinakoteka)
horiexek irakurri berri dudan liburuko protagonistak
zoro batek bere kroniketan jaurtikitako galderak
Agian ez zegoen hain zoro agian
orriak alferrik baliatzen edo gaizki
erabiltzen direla olerkiekin?
Kendu begirada hizkiotatik
eta bete gabeko espazio librean arreta jarri
zoroa

## Isolamendua penintsulan

Mutiko bat lotu dute
nire alboko ziegan
esku eta oinez lotu dute
ohean buruz gora dute loturik
biluzik negu honetan lotu dute
jan eta edan gabe utzi dutelarik
nire alboko ziegan
esku eta oinez loturik
ohean buruz gora lotu dute
bere egin beharrak gainean egitera umiliatuz lotu dute
marapilodun soka bat buruan besterik falta ez duelarik
aulkiari ostikada nork emango lotu dute
aulkiari ostikada noiz emango lotu dute
horrela dute
nire alboko ziegan
esku eta oinez loturik
marapilodun soka bat buruan besterik falta ez duelarik
bere buruaz beste egiteko loturik
esku eta oinez lotu dute
hiru egunez lotua izango dute
nire alboko ziegan
mutiko bat lotu dute

# Emakumea bizkarrez

Bizkarrez
lepotik ipurtalderantz
bizkarrez
besaburuetatik bilduz
bizkarrez
pentsatzen zeudena
ezin leunduz
bizkarrez
begirada han pausatuz
bizkarrez
ulertzen dut
bere enborretik ere
sortuko ditugula gureak
bizkarrez
lepotik ipurtalderantz
bizkarrez
besaburuetatik bilduz

.........................................................................zaitut

## Itsu, mutu, gor... Babel promenadeak

Urduz egin zidanean ez nion piperrik ulertu
Fula egin zidanean ez nion furgoirik ulertu
Bhilieraz egin zidanean ez nion bilerarik ulertu
Mazedoniera egin zidanean ez nion albertxikorik ulertu
Sankristoera egin zidanean ez nion kristorik ulertu
Kitxuz ari zela............................................itsutu

Sangoera egin zidanean ez nion zangorik ulertu
Munukutuba egin zidanean ez nion mertxikarik ulertu
Manipurera egin zidanean ez nion Maripuririk ulertu
Tok pisin egin zidanean ez nion igerilekurik ulertu
Malabera egin zidanean ez nion eskujokorik ulertu
Goroweraz hizketan ikusi.........................eta gortu

Miskitoera egin zidanean ez nion eulitzarrik ulertu
Maoriera egin zidanean ez nion trotskyrik ulertu
Pashtoera egin zidanean ez nion raviolirik ulertu
Kirivileraz egin zidanean ez nion kiribilik ulertu
Zingalieraz egin zidanean ez nion zingirarik ulertu
Motu entzun dudanean............................mututu

# Nahiko nuke II

Lortzea nahiko
nuke
lortzea beharko
nuke
lortzeak nahikoa behar emango
baliguke
Ametsa mereziko luke



## Dum, dum... eta dum

Detonazioa
zartakoa entzun dut
eta lehertu zait burumuina
konodun kazkezurra
garun nahasketa ongarriduna
danba egin dit buruak
eta danba egin didalako buruak
eztanda uhinak utzi nau
zefalea
burugabe
Tazatik edaten Trastevereko karriketan nagoelakoan
ikusteraino ene burua (ai ene zefalea madarikatua)
kafesne bat eskuan, txinpartak buruan
Ondorio post-traumatikoz
buru nahasketaz jabetu naiz
klisk, burua itzuli eta berehala
ez dut ezer oroitzen (ez dut nahi)
ez bururik, ez buztanik, ez buru ez hankarik geratu naizelako
buruz buru zurekin berraurkitu eta berehala
guztiaz oroitu eta
zure erantzun mutxitua dela metxa piztu duena
jabetzeraino
kafesne bat eskuan dut bai
buruko mina motelduko didan inhibitzailea laguntzeko
Ibuprofenoak bihurtuko nauelako burujabe
(tonaka beharko ditut, ordea)

# 94 pausorekin soilik

Gaur bezalako egun lainotsu batean
haize bolada apetatsuak belarriak dizkizunean
harramazkatuko
begiratu gorantz yogien arnasketa tekniken iaiotasunez eta
itsumustuan eman pauso bat, bi, hiru, lau, bost, sei, zazpi,
zortzi, bederatzi, hamar, hamaika, hamabi, hamahiru,
hamalau, hamabost, hamasei, hamazazpi, hamazortzi,
hemeretzi, hogei, hogeita bat, hogeita bi, hogeita
hiru, hogeita lau, hogeita bost, hogeita sei,
hogeita zazpi, hogeita zortzi, hogeita
bederatzi, hogeita hamar, hogeita
hamaika, hogeita hamabi, hogeita
hamahiru, hogeita hamalau, hogeita
hamabost, hogeita hamasei, hogeita
hamazazpi, hogeita hemezortzi, hogeita
hemeretzi, berrogei, berrogeita bat,
berrogeita bi berrogeita hiru,
berrogeita lau berrogeita
bost, berrogeita
sei

aski soseguz,
berrogeita zazpigarrenean
jaitsi burua, ireki begiak
eta gelditu pausoa:

PARETA

parez pare zerumuga delakoan

hormigoia

Gaur bezalako egun lainotsu batean
haize bolada apetatsuak belarriak dizkizunean
harramazkatuko
begiratu gorantz yogien arnasketa tekniken iaiotasunez eta
itsumustuan eman pauso bat, bi, hiru, lau, bost, sei, zazpi,
zortzi, bederatzi, hamar, hamaika, hamabi, hamahiru,
hamalau, hamabost, hamasei, hamazazpi, hamazortzi,
hemeretzi, hogei, hogeita bat, hogeita bi, hogeita
hiru, hogeita lau, hogeita bost, hogeita sei,
hogeita zazpi, hogeita zortzi, hogeita
bederatzi, hogeita hamar, hogeita
hamaika, hogeita hamabi, hogeita
hamahiru, hogeita hamalau, hogeita
hamabost, hogeita hamasei, hogeita
hamazazpi, hogeita hemezortzi, hogeita
hemeretzi, berrogei, berrogeita bat,
berrogeita bi berrogeita hiru,
berrogeita lau berrogeita
bost, berrogeita
sei

aski soseguz,
berrogeita zazpigarrenean
jaitsi burua, ireki begiak
eta gelditu pausoa:

PARETA

parez pare ostilika delakoan

hormigoia



## Egiaz III

Espainolek bide bazterrak
egiaz beteak dituzte

Ehun milaka egi lurperatu
eta egia kondenatu

# Egin dezagun hanka

Ni ez naiz mintzatzen
ez dalmazieraz, ez urartueraz, ez likieraz
ez tximueraz ezta gotikoz ere
ez egiptoeraz, pehievieraz, ugariteraz,
iberieraz ezta bedikoz ere
Are gutxiago sumerieraz, tokharieraz, meroeraz
luviteraz ezta zeltiberieraz ere

Euskaraz mintzatzen naizen arren
laster baimena, soilik izango dut mintzatzeko
frantseseuskaraz edo euskañolez
Hori bai, tout le mondek entendituko dit muy três bien

*Lohitzun juniorri*

## Laster arte lagun

Neurria:
distantzia neurtzeko ahalegina
barrutik kanporantz beti

Denbora:
distantzia besterik ez da
urruntasunaren ordularia

Neofrankismoa:
frankismo sasoi haietatik gaurko denborara
neurtzerik ez dagoen distantzia

Mintzatokia:
Denborak eta distantziak neurtutako
bi milioi eta laurehun segundo milaren
hirurogei ta hamar milioi zentimetro

# Modulua I (Arruntak)

Mariano Mariano
Borja SS
Esteban lisensidu
Roi
Musta motsa
Montxo fatxa
Oreina
Ipotxak
Jaxki
Kakanarioa
Il Duce
Milka
Petinto
Txarles dientes
El Farin semie
errealzalea
Luka
Kundako isaak jitoa
Pepe(ton)toni
Agilutxo fatxa
Gisajoa
Marzela
Frikimigel
UPLeones ananazalea
Markexa (petxo pabo)
Mañas
Zahar kuneteroa (bandejero)
Kordelaren morroia



Kordela famatua
Tejero
Tomax polako
Lenguax
Zoombi
Musita
Ramon eskumotz
Swanskiak
Deslojitoa
Edgar
Toniputasemia
Litri-irujo
Mistela
Mono
Kasetano
Oskar soto
**Milaidi**

(ez du bukaerarik
70 mila ditu Espainiako estatuak)

## Torronek kontata

Ilun
begiak itxita
lo nengoelakoan
entzuten nuen
KRI, KRI, KRI ...
Ametsetan nengoelakoan
lo nintzelarik
begiak itxita
KRI, KRI, KRI...
Belardi- kilkerra ote?
Etxe-kilkerra ote?
Ez, espetxe-kilker bat
alajaina, posible ote
halakorik izatea?
Bai, hauxe delako
txotxoloen suntsitze handiko
arma berritua.
Espetxe barneko ziega
ateko zirrikitutik
barna sakatuz kilkerra
goizaldeko ordu horietan
munstro batekin topo egin dezazun
KRI, KRI, KRI...
ez duzu lo egingo horrela

## Modulua II (Mortikide)

Txitxuki,
Txatxenko
Mariñas
Marmotilla
Sonrisas
Hortxatak
Martxante
Martinex
Ugetekoa
Talparakual
Frikiker
Frikiko
Hortentxi
Yogui
Anakonda
Top austero
Top Gudari,
Ninini
Kikiki
Tristainbeiker
Pikatxu
Jasinto
Pazzo Pakirrin
Tedesko
Juanito
Lehendakari
Eskariolo

Mañukorta
Curie
Katy Garat
Guraifi mairua
Estebextibi
Tximinio
Txina (los Moretxi)
Dali
Findelacita
Xabialkatraz
Txorroskilo taldea
Konku
Kama txo!
Zapetarrak,
Toka
Karma
Amerikanua,
Kaxka
Krixpin,
Itxaso
Txintxin
Hitz eta pitx
Txabi prieto
Intxaur saltsa

(Gero eta gutxiago gero eta banatuago, inoiz ez modulu berean denak)

## Zukutu

Led argi baten bizi-orduak
beharko nituzke
zu lako madari bati
zuku guztia zukutzeko
ordu t'erdi
besterik ez dut koxk egin
eta mamurtzeko *purtroppo*



## Mamuek

Putz egin zenidan bekoki aldean enbataren indarrez
orduan atea parez pare zabaldu zuen ekaitzak
eta mamu guztiek ihes egin zuten
ni haiei begira
eta zu haien atzetik ezin ihes eginik
eraman zintuzten
ni haiei begira
gatibu nire sarean ninduzularik
eraman zintuzten
bekokian putz egin zenidan egunean

## Krispetak

Txitxarroa branlatu eta
krispeta txinpartak saltoka dira
ttipi-ttapa-ttarraka
batzuk goxoak
besteak gaziak
ttipi-ttapa-ttarraka
zinemaren azkeneko besaulkian
txibiarekin dantza-eskuan
naukazun bitarte horretan
krispeta txinpartek
ttipi-ttapa-ttarraka

## Modulua III (Etsaien soldaduak)

Papa noel
Priscila
Autobusero
Felixuko
Sagarrondo
Zoro
Mozkorra
Pxikopata
Txarki Brown
Seolorita
Pitufoa
Dalbator
Kristian
Kagroia
Bi ate
Frantxisko
Retegi II
Mikel Nait ‘el Luis’
Iltxuri
Lodia
On (egin) Pedro
Tanakletos
Zapatonex
Milhouse
Los patanegra
Rostropalido
El estirau

Ojitox
Pelopintxo
Juanja
Jelow
Dukados
Dartañan
Antonio
Ipurdieder
Mandibulax
Belarrix
Titi haundi (estibi dixit)
Lyky luke
Txetxu
Kilikeee
Kixkur
Tiranteduna
Engraxi
Moviestar
Kurita
Proseurrekoak
...

(70 mila preso arrunt badaude,
amaigabeak dira hauek ere)

## Katuak badaki

Lo zaude eta zure ohe-izkinan
lisatu gabeko izarrek loturik zaituztela
zure gorputzarekin soilik izan dutelako guda
bakarrik zaudelako ohean eta katuak badaki
badaki zu beste inor ez dela
gainontzeko ohe-izkinak, guztiak, bereak direla
lo zaude zure ohe-izkinan
eta katua salto batez jabetu da ohe guztiaz
salto batez bere egin du lisatu gabeko izaren marapiloa
zuri pentsa-araziz haren arnasketa zaratatsu
zein baketsua
........................................amorantea dela

# Mamiak

Mugitzen nabaritu dut han urrunean
mugitzen gorantz zein beherantz
bazihoan zerumugarantz
bai ezker zein eskuma, alderantziz kulunkan
bazihoan aldakekin batera
dantzaldi armonizatuan
eskatuko ote didate pasaporterik zerumugan?
Harantz zihoalako begitan dudana
dantzaldi armonizatuan
eta ni atzetik korrika
ni ere galtzeko prest



*Arranoko ganbaran*

## Gernika kokakola

Haritz baten azpian
biltzen ziren gure aitzindariak
etxe baten inguruan
batu izan gara garaikideok

haritz baten teilatupean
konspiratu dugu jarraikideok
gainontzeko adarretakoekin batera
Arrano beltz baten begiradapean

## ISBN 978-84-8016-895-3

Italiano spagnolo
un mini dizionario Larousse
que ha tutti i diritti di traduzione
                    di riproduzione
                    di adattamento

e che sono riservati per i tutti Paese
e che era editato otto anni fa
e che tiene deposito legale NA quattro-duemiladieci

Eccolo la seguente equazione risolta
vela sua pagina cinquecento quaranta:

e= gruppo politico eversivo basco

Quindi perche litigare con asini
si questo semplice dizionario
ci da una lezione d’obiettività

Allora si ci sono incarcerati per quello
Allora si a siamo incarcerati per questo

siamo che cosa?

# Egiaz IV (Benetan)

Gezurretan
egiak itsatsi daitezke
egietan
gezurrak irrist eginez

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza. *2011.*

**Espetxetik at**
Borxa Urberuaga. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi naiz**
Ibon Muñoa. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. Hainbaten artean. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
Mikel Antza / Iker Moreno. *2012.*

**Fakin xokona**
Oier Goitia. *2012.*

**Sasian barna**
Xabier Makazaga. *2012.*

**Preso nago 2**
Mikel Orbegozo. *2013.*

**Z²**
Mikel Antza. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
Jokin Urain. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
Ibon Muñoa. *2014.*

**Urte ilunak**
Nelson Mandela (itzulpena: Ekaitz Sirvent). *2014.*

**Ilargiraino!**
Mikel Orbegozo. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
Joseba Arregi. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Kuku erlojua**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Haizea**
Hainbat egile. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
Ibon Muñoa. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
Jexuxmari Zalakain, *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
Kepa Etxebarria. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
Ibon Muñoa *2017.*

**Errezel berdeak**
Jexuxmari Zalakain. *2017.*

**Txori mezulariak**
Joseba Erostegi 'Eltzikorta' / Lorea Erostegi Fernandez. *2018.*

**Hamaika desio utopiarako**
Ibon Muñoa. *2018.*

**Egia baten egunerokoa**
Oier Goitia. *2018.*



**Oier Goitia Abadia**
1974
Gernika

Gezurra
egia izan daiteke
baldin eta
Bulebarreko ezkerreko espaloitik
edo eskubikotik
zoazen
korrika



**atara**miñe
**www.literaturakoadernoak.org**